

# Badimaya

**Badimaya** (zenbaitetan "Party-maya" gisa ere ezagutua) Australiako hizkuntza indigena bat da, Pama-Nyungan familiako Kartu azpitaldekoa.

Badimaya galzorian dagoen hizkuntza bat da, egun australiar indigena gutxi batzuk besterik ez dute hitz egiten, 65 urtetik gorakoak guztiak.[1]

| Badimaya | |
|---|---|
| **Datu orokorrak** | |
| **Hizkuntza familia** | |
| giza hizkuntza<br>Australian Aboriginal languages (en)<br>Pama–Nyungan languages (en)<br>South-West Pama-Nyungan languages (en)<br>Kartu languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-3** | bia |
| **Ethnologue** | bia (http://www.ethnologue.com/language/bia) |
| **Glottolog** | badi1246 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/badi1246) |

## Eduki-taula



## Hedapen geografikoa

Antzina badimaya hegoaldean Moore Lakuak, Ninghan Station, Paynes Find eta Dalwallinu hiriak eta iparraldean Mount Magnet, Wynyangoo Station eta Kirkalocka Stationek mugatutako eremuan erabiltzen zen.

Gaur egun badimayaren hiztunak australiaren erdi-mendebaldean sakabanatuta aurkitzen dira, inguruko hiri eta komunitate desberdinetan.

Badimayar herrialde tradizionala ekialderantz Wati hizkuntzak, Noongar-ak hego mendebaldean eta Wajarri-ak ipar mendebaldean mugatuta zegoen.

## Aldaerak

Badimaya Widi izenez ere ezagutua izan daiteke, baina baliteke honen dialektu bati jarritako izena izatea.[2]

Hizkuntzaren analisi lexiko eta gramatikalak argitzen du badimayak gutxienez bi dialektu izan zirela. Dialektu hauek ez dute izenik baina Badimayar hiztunek bereizten zituzten berezitasun hauek toki desberdinetako hiztunen artean, hizkuntzak hedapen handiagoa zuenean.

## Tipologia

Badimaya tipologikoki oso antzekoa da mendebaldeko Australiako beste Pana-Nyungar hizkuntzekiko. Fonemen eta bokalen erabilera hizkuntza talde honen bereizgarri da.

Inguruko hizkuntzen antzera, ergatibo kasuak zatitzeko markaketa sistema bat erabiltzen du. Hala ere, lengoaia hauek ez bezala hala ere, Badimaya-k ez du mugatutako sistema pronominalik.

## Hizkuntza-baliabideak

Bundiyarra Irra Wangga Hizkuntza Zentroa (Yamaji Hizkuntza Zentroa honen aurretik) Badimaya hizkuntzaren inguruko informazioa jasotzan darrai 1993. urtetik eta hiztegiak, hitz zerrenda ilustratuak, materia gramatikala (egun argitaratu gabeak) eta hainbat liburu elebidun argitaratu ditu.

## Erreferentziak


1. ↑ **(Ingelesez)** «A14: Badimaya» (https://collection.aiatsis.gov.au/austlang/language/a14) *collection.aiatsis.gov.au* . Noiz kontsultatua: 2019-02-18.
2. ↑ **(Ingelesez)** «A14: Badimaya» (https://collection.aiatsis.gov.au/austlang/language/a14) *collection.aiatsis.gov.au* . Noiz kontsultatua: 2019-02-18.


## Kanpo estekak

**Autoritate kontrola** **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q3442745

